EUSKAL HERRIA
KIROLA

# Gure esku dagoelako

Donostiako Tabakaleran aurkeztu zituen joan zen asteazkenean **Gure Esku-**k *Hamaika Gara* erreferendumen aldeko sinadura bilketa eta hurrengo hilabetetarako ekimenak.

Sinadura bilketa sustatzeko hasierako 24 eragileen artean dago **Euskal Herria Kirola.** Gure ordezkari bat izan zen Donostiako aurkezpenean ekimenari gure atxikimendua adierazten.

**Gure Esku**-ko bozeramaile Amalur Alvarezek eta Josu Etxeburuk esan zuten moduan sinadura bilketa hau mugarri bat izango da. Konpromiso eskaera zuzenak egingo zaizkie Gasteizko eta Nafarroako Legebiltzarrei eta Iparraldeko Elkargoari.

**Euskal Herria Kirolak** bat egiten du ekimen honekin. Hartara, besteren artean, Durangon izango gara maiatzaren 16an bertan egingo den ekitaldi nazionalean. Eta parte hartuko dugu ekainaren 13an herriz herri antolatutako *Hamaika Gara* egunean.

Kirolean ere gure esku dagoelako.

Gure esku dago euskal kirol esparrua garatzea. Nahi dugulako, komeni zaigulako eta Euskal Autonomia Erkidegoan eta Nafarroa Garaian **eskuduntza osoak** ditugulako, gure esku dago kirola egoki deritzogun moduan antolatzea.

Gure esku dago kirolean euskaraz bizi al izateko eskubidea bermatzea, parekidetasunez aritzea, balore justuetan oinarrituta lehiatzea.

Gure esku dago ezberdinen arteko elkarbizitzarako hain tresna baliagarria den kirolari behar duen garrantzia ematea.

Gure esku dago euskal selekzioen ofizialtasuna nazioarteko erakundeetan eskatzea. Aldarrikapena agenda politikoan txertatzea.

Gure esku dago ofizialtasuna lortu ezean bide alternatiboak topatzea eta garatzea.

Gure esku dago, gure kirolariek nazioartean berea sentitzen duten ikurrekin lehiatzea bermatzea. Nahi dutelako, behar ditugulako.

Gure esku dago, edo gure esku dagoen guztia egin behar dugulako, gaur ezinezko dirudien hori, bihar posiblea izan dadin.

*Iruñea, 2020ko martxoaren 16a*

ehkirola.eus
info@ehkirola.eus
Portuetxe 45, 3. solairua / 20018 Donostia